


Agur eta Ohore Arkaitz,

**Borroka eremu dugun espetxean izan zaitugu kide eta bidai lagun**. Hil dizkiguten beste kideen galeraren mina konpartitu izan dugu.Oraingo honetan zure galeraren mina partekatzen dugu gainontzeko kideon artean.

Zure heriotzaren argazkiak ez omen ditu biolentzia arrastorik: non ote Alcalan, Algecirasen, Puerto IIIn edo Sevillan jasotako jipoien ubeldurak? non bakardadea, isolamendua, eta espetxeari etenik gabe darion bortizkeriaren atzaparkadak? non izua eta mina? Askapen borroka itotzeko, **Estatuek ongi diseinatu duten estrategia politiko eta errepresiboaren ondorio zuzena izan da zure heriotza**. Auzi medikuek kontrakorik esango duten arren.

**Hamarkadetako ibilbide politiko baten oinordeko gara.** Hamaika zauri, hamaika heriotza, hamaika malko eta baita hamaika itxialdi, gose egarri-greba, planto eta borroka molde ezberdin. Gure herriaren askatasun grinari hauspoa emanez, kanpoan ginen bezain militante.

Une latz hauetan gure doluminik sentituenak **Arkaitzen senide eta lagunei**. Zuen bihotz taupada larrituetan lagun gaituzue.

**Gatazka betikotu nahi duten horiei** ondorengoa esan nahi diegu: Guk erabakia hartua dugu, Euskal Herriak askatasuna behar du, bide horretan gure posizio politikoan berresten gara, eta egungoari ere borroka jarrera batekin erantzungo diogu.

**Euskal jendarteari,** guztion esku dago, gure etxeratze bidean, sakabanaketa politika kriminal honekin bukatzea. Salbuespen neurri mingarriak amaitzea. **ASKI DA!** Esan eta denon konpromisorako unea da.

**Borrokan aurkituko gara.**

**Gora Arkaitz.**

Euskal Presoak Euskal Herrira!
Amnistia-Autodeterminazioa!

**EPPK** 2014ko otsailean, Euskal Herria bihotzean.